# URTEAN ZEHARREKO XXV. DOMEKA
## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Nire asmoak ez dira zuenak lakoak.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 55, 6-9

Bilatu egizue Jauna, aurkitu leiteken bitartean;
dei egiozue, hurrean dagoan bitartean.
Itzi begi gaiztoak bere bidea,
gaizkileak bere asmo txarrak;
bihurtu bedi Jaunagana, errukiz hartuko dau-eta,
gure Jainkoagana, guztiz parkabera da-eta.

Nire asmoak ez dira zuenak lakoak,
ezta zuen jokabidea be nirea lakoa, dino Jaunak.
Zelan zerua lurraren gainetik garai,
halan nire jokabidea zuen jokabidearen gainetik,
nire asmoak zuen asmoen gainetik.

Jaunak esana.

### Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 2-3. 8-9. 17-18 (R/. 18a)

R/. **Hurrean dago Jauna dei egiten deutsoenengandik.**

V/. Egunero zaitut bedeinkatuko,
beti dot zure izena goratuko.
Handia da Jauna, guztiz goresgarria,
mugarik bakoa haren handitasuna. R/.

V/. Errukiorra eta bihozbera da Jauna,
hasarregatxa eta onginahiz betea.
Ona da Jauna guztientzat,
errukiz betea bere sorkari guztientzat. R/.

V/. Zintzoa da Jauna bere bide guztietan,
leiala egintza guztietan.
Hurrean dago Jauna dei egiten deutsoenengandik,
benetan dei egiten deutsoen guztiengandik. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Niretzat, bizitzearen arrazoia Kristo da.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik

*Flp* 1, 20c-24. 27a

Senideok: Ziur nago, ni bizirik nahiz hilda egon, bere handitasuna agertuko dauala Kristok nigan. Izan be, niretzat, bizitzearen arrazoia Kristo da, eta hiltzea irabazpide. Baina bizitzen

jarraituz lan onuragarria egin ahal badagit, ez dakit nik zer aukeratu.

Alde bietatik nago estu: batetik, hil egin nahi neuke, Kristogaz izateko; niretzat hau askoz hobea da-eta; baina, bestetik, nik bizirik jarraitzea beharrezkoago da zuentzat.

Hauxe bakarrik eskatzen deutsuet: bizi zaitezela Kristoren Barri Onari dagokion lez.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Eg* 16, 14b

R/. **Aleluia.**

V/. Edegi, Jauna, gure bihotza,
gogoz onartu daiguzan zure Semearen hitzak. R/.

## EBANJELIOA

*Inbidia ete dozu, ni ona nazalako?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 20, 1-16

Aldi haretan, Jesusek parabola hau esan eutsen ikasleei: «Zeruetako erreinuagaz mahasti-nagusiagaz bezala gertatzen da. Goizean goiz bere

mahastirako behargin bila urten eban. Eguneko lansaria zidarrezko txanpon baten berbatu ondoren, mahastira bialdu zituan langileak.

Goizeko bederatziak aldera barriro urten eban eta, beste batzuk plazan lanerako zain ikusirik, esan eutsen: “Zoaze zeuok be nire mahastira eta ordainduko deutsuet bidezko dana”. Eta hareek be joan egin ziran. Urten eban barriro hamabiak aldera eta hirurak aldera, eta gauza bera egin eban. Arratsaldeko bostak aldera be urten eban eta, beste batzuk oraindino geldi aurkiturik, esan eutsen: “Zertan zagoze hemen egun osoan lanik egin barik?” Hareek erantzun eutsoen: “Ez gaitu inork hartu beharrerako”. Harek, orduan: “Zoaze zuek be nire mahastira”.

Iluntzean mahasti-nagusiak esan eutson arduradunari: “Deitu beharginei, eta emoiozu bakotxari bere soldata, azkenekoetatik hasi eta lehenengoetara”.

Etorri ziran, bada, arratsaldeko bostetakoak, eta zidarrezko txanpon bana hartu eben. Lehenengo ordukoek,

txanda heldu jakenean, besteek baino gehiago hartuko ebela uste eben; baina hareek be zidarrezko txanpon bana hartu eben.

Orduan, nagusiaren kontra marmarka hasi ziran, eta esan eutsoen: “Azkeneko honeek ez dabe ordubete besterik lan egin, eta gugaz bardindu dozuz, egun osoko nekea eta beroa eroan dogunokaz”. Baina nagusiak erantzun eutson hareetariko bati: “Adiskide, ez deutsut bidebakokeriarik egiten. Ez ete ginan berbatu zidarrezko txanpon baten? Eutsi dagokizuna eta zoaz. Zuri beste emon gura deutsat azkeneko honi be. Ezin ete dot neure diruaz nahi dodana egin? Ala inbidia dozu, ni ona nazalako?”

Holantxe, bada, azkenekoak lehenengo izango dira eta lehenengoak azkeneko».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXV. DOMEKA

## B urtean

### I. IRAKURGAIA

*Heriotza lotsagarrira kondenatuko dogu.*

Jakituria liburutik

*Jkt* 2, 12a. 17-20

Hau inoen gaiztoek:
«Jarri deioguzan sareak zintzoari;
ikusi daigun esaten dauana egia dan ala ez,
aztertu daigun zelako amaiera dauan ikusteko.
Benetan Jainkoaren seme bada,
etorriko jako ha zintzoari laguntzera
eta libratuko dau arerioen eskuetatik.

Irainak eta oinazeak jasanarazoko deutsaguz,
haren nasaitasuna ezagutu eta eroapena probatzeko.
Heriotza lotsagarrira kondenatuko dogu,
bere esanetan, Jainkoak alde urtengo deutso-eta».

Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 54 [53], 3-4. 5. 6 eta 8 (R/. 6b)

R/. **Jauna da nire biziaren babesle.**

V/. Ene Jainko, salbatu nagizu zeure izenagaitik,
defendatu nire auzia zeure ahalmenaz.

Entzun, ene Jainko, nire otoitza,
makurtu belarria nire ahoko hitzetara. R/.

V/. Nire aurka jagi dira harroak
eta ni hil nahian dabiltz gogorzaleak,
Jainkoaren ardurarik barik. R/.

V/. Baina nik Jainkoa dot laguntzaile,
Jauna neure biziaren babesle.
Sakrifizioak eskeiniko deutsudaz bihotz-bihotzez,
zure izena goratuko, Jauna, ona zaralako. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Bakegileek bakean ereiten dabe*
*eta frututzat zuzentasuna batzen.*

Santiago Apostoluaren epistolatik

*St* 3, 16–4, 3

Senide maiteok: Bekaizkeria eta norgehiagokeria diran tokian, han dira nahastea eta era guztietako gaiztakeriak. Goitik datorren jakituria, barriz, garbia da lehenengo; gainera, baketsua, bihozbera, amore-emoilea, errukitsua eta frutu onak dakarzana, alderdikeriarik eta itxurazalekeriarik bakoa. Bakegileek bakean ereiten dabe eta frututzat zuzentasuna batzen.

Nondik sortzen dira zeuen artean

dozuezan hasarreak eta burrukak? Ez ete zuen barruan burrukan dabiltzan grina txarretatik? Zeozer gogo biziz gura eta eskuratu ezin dozuenean, hilketak egiten dozuez; zeozer nahi eta lortu ezin dozuenean, hasarrea sortu eta burruka egiten dozue. Ez badaukazue, eskatzen ez dozuelako da; eskatu eta hartzen ez badozue, txarto eskatzen dozuelako da, zeuen grina txarrak asetzeko eskatzen dozuelako.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *2 Ts* 2, 14

R/. **Aleluia.**

V/. Honetarako dei egin deusku Jainkoak Barri Onaren bidez,

Jesu Kristo gure Jaunaren aintza eskuratzeko. R/.

## EBANJELIOA

*Gizonaren Semea gizakien eskura emongo dabe. Lehenengo izan nahi dauana izan bedi danetan azkena.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 9, 30-37

Aldi haretan, Jesus eta ikasleak

menditik alde egin eta Galilean zehar ebiltzan. Jesusek ez eban hori inork jakiterik gura, ze, ikasleei irakastera emona egoan. Holan inotsen: «Gizonaren Semea gizakien esku itziko dabe; hil egingo dabe, baina hil eta hiru egunera biztu egingo da». Hareek, ostera, ez eben ulertzen zer esan gura eutsen; itauntzeak, barriz, bildurra emoten eutsen.

Heldu ziran Kafarnaumera eta, etxean egozala, Jesusek itaundu eutsen: «Zer eztabaida izan dozue bidean?» Baina hareek berbarik ez; ze, euren artean handiena nor ete zan eztabaidatu eben bidean.

Jesarri zan Jesus eta, Hamabiei dei eginik, esan eutsen: «Lehenengo izan nahi dauana izan bedi danetan azkena eta danen zerbitzaria».

Gero, umetxu bat hartu, hareen erdian jarri eta, besarkatuz, esan eutsen: «Holako ume bat nire izenean onartzen dauanak Neu onartzen nau, eta Ni onartzen nauanak, ez nau Neu onartzen, ezpada ze, bialdu nauana bera baino».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXV. DOMEKA
## C urtean

## I. IRAKURGAIA

*Behartsuak diruz erosten dabezanen aurka.*

Amosen Profezia liburutik

*Am* 8, 4-7

Entzun hau zuek, behartsuak zapaldu eta herriko jente apala hondatzen dozuenok. Zeuen barruan dinozue:
«Noiz igaroko ete da ilbarri-jaia, garia saltzeko,
noiz zapatua, garauna salgai jartzeko?
Neurria txikiagotu eta prezioa handituko dogu,
okerreko pisuak erabiliz;
gari-zahia be saldu egingo dogu.
Jente apala diruz erosiko dogu
eta behartsuak oinetako pare baten truke».

Jakoben ondorengoen harrogarri dan Jaunak zin dagi
ez dituala sekula ahaztuko horreen egintza gaiztoak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 113 [112], 1-2. 4-6. 7-8 (R/. ik. 1a eta 7b)

R/. **Goratu egizue Jauna,**
**behartsua zaborretatik ataratzen dauana.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Goratu egizue, Jaunaren zerbitzariok,
goratu Jaunaren izena.
Bedeinkatua izan bedi Jaunaren izena,
orain eta beti. R/.

V/. Jauna herri guztien gainean garai dago,
haren ospea zerua baino gorago.
Nor da Jauna gure Jainkoa lakorik?
Gorenean dau tronua,
baina beheratu egiten da,
zerura eta lurrera begiratzeko. R/.

V/. Gizajoa hautsetatik jasotzen dau,
behartsua zaborretatik ataratzen,
eta handikien artean jesarriarazoten dau,
bere herriko handikien artean. R/.

## II. Irakurgaia

*Egin otoitz Jainkoari gizaki guztien alde,*
*gizaki guztiak salbatzea nahi dau-eta berak.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako

lehenengo epistolatik

*1 Tm* 2, 1-8

Anaia maitea: Beste ezer baino lehen, gizaki guztien alde eskari, otoitz, erregu eta esker emoteak egiteko eskatzen deutsut; baita erregeen eta agintea daben guztien alde be, modu nasaian eta baketsuan bizi gaitezan, jainkozaletasunez eta duintasunez. Eder eta atsegin jako hau Jainko gure Salbatzaileari, gizaki guztiak salbatzea eta egia ezagutzera heltzea nahi dau-eta berak.

Izan be, bakarra da Jainkoa eta bakarra Jainkoaren eta gizon-emakumeen bitartekoa be: gizon bat, Kristo Jesus, bere burua guztien salbazinorako ordain-saritzat emon ebana. Bere sasoian egindako autormena da hau, eta honetarako egin nau ni Jainkoak oihulari eta apostolu –egia dinot, ez dinot guzurrik–, jentilen maisu, eurei sinismena eta egia irakasteko.

Beraz, gizonezkoek toki guztietan otoitz egin dagiela nahi dot, zerurantz esku garbiak jasoz, hasarrerik eta eztabaidarik barik.

Jaunak esana.

## Aleluia

*2 Ko* 8, 9

R/. **Aleluia.**
V/. Jesu Kristo, aberats izanik, behartsu egin zan,
bere behartsu izateaz zuek aberats egiteko. R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Ezin zarie izan Jainkoaren eta diruaren morroi.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 16, 1-13

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Gizon aberats batek etxejagolea eukan, eta berau ondasunak alperrik galtzen ebilkola jakinarazo eutsoen.

Deitu eta esan eutson: "Zer da zutaz entzun dodan hori? Emoidazu etxezaintzaren kontua, ez zara aurrerantzean nire etxezain izangoeta".

Etxejagoleak, orduan, hauxe inoan berekautan: "Zer egin behar dot nik orain, nagusiak kargua kentzen deustan

ezkero? Atxurrerako ez naz gauza, eta eskerako lotsa naz. Badakit zer egin, kargutik botatzen nabenean etxean nork hartu izan dagidan". Banan-banan bere nagusiaren zordun guztiei deitu eta lehenengoari itaundu eutson: "Zenbat zor deutsazu nire nagusiari?" Harek erantzun: "Ehun upel olio". Etxezainak, orduan: "Hona hemen zure ordain-agiria; agudo, jesarri eta idatzi berrogeta hamar". Gero, hurrengoari itaundu eutson: "Zuk zenbat zor deutsazu?" Harek erantzun: "Ehun anega gari". Etxejagoleak, orduan: "Hona hemen zure ordain-agiria; idatzi laurogei".

Eta nagusiak txalotu egin eban ha etxezain zuzentasun bakoa, zuhur jokatu ebalako. Izan be, mundukoak zuhurrago dira euren arteko arazoetan, argitakoak eurenetan baino.

Beraz, hauxe dinotsuet Neuk be: "Irabazi egizuez adiskideak zuzentasun bako diruaren lepotik; holan, dirua amaitzean, betiko bizilekuan hartuko zaitue Jainkoak. Gauza txikerretan sinisgarri dana, handietan be fidagarri da, eta gauza txikietan zuzengabe dana,

handietan be zuzentasun bakoa. Zuzentasunik bako dirua erabiltzen fiatzekoak izan ez bazarie, nork itzi leike zuen esku egiazko ondasuna? Zeuena ez dozuen aberastasunagaz fiatzekoak izan ez bazarie, nork emon benetan dagokizuena?

Ezin da morroi bat nagusi biren zerbitzari izan. Izan be, bata gorroto izango dau, eta bestea maite; edota bategaz berbako izango da, eta bestea ez dau aintzat hartuko. Ezin zarie izan Jainkoaren eta diruaren morroi”».

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean.

*Ezin zarie izan Jainkoaren eta diruaren morroi.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 16, 10-13

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Gauza txikerretan sinisgarri dana, handietan be fidagarri da, eta gauza txikietan zuzengabe dana, handietan be zuzentasun bakoa. Zuzentasunik bako dirua erabiltzen fiatzekoak izan ez bazarie, nork itzi leike zuen esku egiazko ondasuna?

Zeuena ez dozuen aberastasunagaz fiatzekoak izan ez bazarie, nork emon benetan dagokizuena?

Ezin da morroi bat nagusi biren zerbitzari izan. Izan be, bata gorroto izango dau, eta bestea maite; edota bategaz berbako izango da, eta bestea ez dau aintzat hartuko. Ezin zarie izan Jainkoaren eta diruaren morroi"».

Jaunak esana.

---